# ULERMENA TEST BIDEZ 3

**1. Nork lehen andregaia topatu, huraxe ezkontzeko tratua egin zuten.** Bestela esanda:
a) Lehendik zuen andregaiarekin ezkontzeko tratua egin zuten.
b) Ezkongai aurkitzen zuten lehen andrearekin ezkontzeko tratua egin zuten.
c) Hauxe adostu zuten: topatzen zuten lehen andregaiarekin ezkonduko ziren.
d) Andregaia topatzen lehena, ezkontzen ere beralehena izatea adostu zuten.

**2. Ezin dezakete zentzuz jantzitako gizonek uste izan, euskalduna sortzez, izaeraz, beste inor baino gogomeharragoa denik.** Hau da:
a) Euskalduna sortzez, izaeraz, beste inor baino talentu gutxiagokoa dela pentsa dezakeen pertsona zentzudunen bat izatea posible dela.
b) Ez dagoela pertsona zentzudunik, euskalduna sortzez, izaeraz, beste inor baino talentu gutxiagokoa dela pentsa dezakeenik.
c) Ezin dezakeela zentzuz jantzitako inork pentsa, euskalduna sortzez, izaeraz, beste inor baino talentu gehiagokoa denik.
d) Euskalduna sortzez eta izaeraz beste edozein bezain gogomeharra izan daitekeela pentsa dezakeenik badela oraindik.

**3. Nor bere garaiko ume denez, berrizale haiek ere iraganaldiari josiak zeuden eta ez zuten lotura hori hautsiko eredutzat hartu zituzten arrotzek besterik irakasten ez bazieten.** Hots:
a) Iraganaldian kokatuta zeuden, eta eredu gisa ez zuten ezezagunen irakaspenik hartzen.
b) Berritsu haiek beste garai batean bizi ziren, eta arrotzek baino ez zizkieten irakasten eredu onak.
c) Berrizale haiek ere iraganaren morroi ziren, eta arrotzen irakaspenak beharrezkoak zituzten lotura hausteko.
d) Gure denborako umeak garenez, berrizaleen modura iragana hautsi behar dugu eta ezezagunen ereduak aintzat hartu.

**4. Jakizue, ni atzo mozkortu nintzelako zurrumurru hori sinestu duzuenok ez zaretela lagun on-onak.** Hau da:
a) Mozkortu zelako ez dituela lagun ontzat hartzen jakinarazi die.
b) Atzo mozkortu egin zela sinestu dutenak ez dituela lagun ontzat hartzen adierazi die.
c) Atzo ez zela mozkortu lagunekin eta dena zurrumurruak direla jakin du.
d) Atzo berarekin mozkortu diren lagunak zurrumurruak zabaltzen jakin dutela.

**5. Urte kaskar haren ondoren, ederki kostata atera genuen enpresa aurrera.** Hau da:
a) Urte kaskar haren ondoren lanak izan genituen enpresa aurrera ateratzen.
b) Urte kaskar hartan egindako lanak atera zuen enpresa aurrera.
c) Urte kaskar haren ondoren gure lanak kostatu zitzaizkigun enpresa aurrera ateratzea.
d) Urte kaskar haren ondoren lanak kostata atera genuen enpresa aurrera.

**6. Erronda osoa egin zuen argazki zahar hark, eta sortu zuen interesa ez zen axalekoa izan.** Hortaz:
a) Batak besteari pasatu eta denek ikusi zuten azalazaletik argazkia.
b) Lagunak errondan zebiltzaneko argazki hark sekulako interesa piztu zuen.
c) Eskutik eskura ibili zen argazki hark jakin-min handia sortu zuen.
d) Denek ikusi zuten interes handiz argazkiko zahar hura.

**7. Itxuren arabera, buru-lanerako trebeagoa izango zen eskulanerako baino, bizitzak hautua eman balio.** Bestela esanda:

a) Eskulanetarako ez zuen, inondik ere, burulanetarako besteko gaitasunik erakutsi bizitzan.

b) Hartarako abagunea izanez gero, buru-lanetarako egokiagoa izango zen, nonbait, eskulanetarako baino.

c) Ez zuen buru-lanetan jardun izanaren itxurarik, bizitzak eskulanetan aritzeko beste ezertarako ez baitzion aukerarik eman.

d) Buru-lanetarako gaitasun handiagoa izanagatik ere, badirudi nahiago izan zuela eskulanetan jardun.

**8. Lagun minak behar gaituenean, dena eta ez dena bertan behera utzita, bidezkoa ez ote da harengana joatea?** Hau da:

a) Dena utzi duen lagun minak behar gaituenean, bertan behera uztea da bidezkoena.

b) Ez da bidezkoa premia larrian den laguna minez bertan behera uztea.

c) Lagunak bertan behera dagoelako deitzen digunean, ez da bidezkoa ez laguntzea.

d) Lagun minak behar gaituenean, ez da bidezkoa, eskuartean duguna alde batera uzteko aitzakia bila ibiltzea.

**9. Azpiegitura erraldoiak garatzeaz landa, gizakiaren kezkak ez dira betikoetatik larregi urrundu.** Hots:

a) Azpiegiturak ikaragarri garatu dira eta landak desagertzeko zorian daude.

b) Azpiegiturak ikaragarri garatu direlako gizakiaren kezkek bere horretan diraute.

c) Azpiegiturak ugaritu dira; dena den, gizakiaren kezkak lehengoxeak dira.

d) Azpiegiturak garatu ez direlako gizakia kezka berberek arduratzen dute.

**10. Ia naturala da lurrean bizi eta ortzira begiratzen duen gizasemearentzat astroak Lurraren inguruan dabiltzala pentsatzea.** Hots:

a) Beste planetak Lurraren inguruan mugitzen direla pentsatzea gauza arrunta da gizakion artean.

b) Pertsonek gogoko dute naturan bizitzea eta zeruaz gozatzea, astroei begira.

c) Gizakia betidanik ohartu da astroak Lurraren inguruan jiraka dabiltzala.

d) Gizakiak berezko joera du naturan bizitzeko, ortzira begiratzeko eta astroez pentsatzeko.

**11. Eredutik ikasiko bada, ikasteko ezagutu egin behar da eredua.** Hau da:

a) Eredua eskola ona da ikasi nahi duenarentzat.

b) Ikaskizun da eredua, eredugarri gertatuko bada gero.

c) Ikasteko egokiak gerta daitezen, eredu onak soilik ezagutu behar dira aurretik.

d) Biak dira beharrezko: eredutik ikastea eta ikasitakoa eredu bihurtzea.

**12. Abortuaren auzian, eutanasiarenean ez bezala, ez nauzu gogaide.** Bestela esanda:

a) Abortuaren auzian ez gara iritzi berekoak, eutanasiarenean ere ez garen bezalaxe.

b) Ez nator bat zurekin abortuaren auzian; bai, ostera, eutanasiarenean.

c) Eutanasiaren auzian bat ez gatozen heinean ez dugu elkar hartzen abortuarenean.

d) Abortuaren auzian eutanasiarenean bezainbesteko adostasuna dugu.

ERANTZUNAK: 1D 2B 3C 4B 5A 6C 7B 8D 9C 10A 11B 12B